**Mintzaidetza**

**EPPKko MINTZAIDETZAREKIN ELKARRIZKETA 2013ko otsaila**
**Xabier Alegria eta Lorentxa Gimon**
**GARA eta BERRIA**

**1.- Lehenik eta behin, nola bizi izan duzue urtarrilaren 12ko manifestazioa kartzelatik? Manifestazio handietatik aparte, zer gehiago egin dezake gizarteak presoen egoera konpontzeko? Hemendik aurrera zer, alegia?**

**Xabier Alegria(XA).- I**azkoak bezala poztasunez eta harrotasunez bete gaitu. Indar handia ekarri digu. Garrantzi berezia du aurtengoak, blokeoa eragin nahiari egoki erantzun baitio. Kolosala izan zen iazkoa baina, lemari tinko eta arraunean gogotik aritzeko erabakiortasuna berretsi du aurtengoak. Prozesuak eskatzen duen eta are eskatuko duen tema eta sena gorpuzten ari den isla.

Inportantea izanagatik ez da aski. Presio sozial eta politiko-instituzional iraunkorra behar da. Jendarteak ulertu du urratsak eman behar direla eta presoak kaleratzea zerbait positibo eta naturala dela. Mobilizatu eta Herria astintzeko unea da. Guztion konpromisoa behar da, baita alderdi, sindikatu eta eragile ezberdinetako buruzagiena ere. Presoen eskubideak gauzatu eta presoak kaleratzeko ardura-egitasmoa berea eginez badago eragile guztien kontsentsu zabaleko akordioa eraikitzerik.

**Lorentxa Gimon(LG).-** Bilbon eta Baionan zinez irudi eder eta hunkigarria erakutsi da, gure familiei erakutsitako elkartasuna. Senideek jasotako berotasunak hunkitu gintuen bereziki eta hemendik haien ahalegin eta duintasun itzelak goraipatu nahi ditugu. Haiekin bat eginik, bisitari uko eginez Bilbon izateko moldea ere baliatu genuen.

**2.- Zenbait presok Josu Uribetxebarriaren askatasunaren aldeko borroka Kolektiboarentzat oso berezia izan zela aipatu izan dute –oso espontaneoa, batasun handiarekin egindakoa…–. Horrela bizi izan duzue?**

**XA.-** Garrantzitsua izan da. Muturreko egoeran genuen Josu, eta berak erakutsitako jarrera eredugarriari erantzun zabal eta erabatekoa eman diogu. Espontaneoa ere bai, ez baita eztabaidarako tarterik izan, buru belarri sartu gara egoera irrazionala salatu eta konpontzeko. Eta gogorra izan da, sufrimendua ekarri du Josu eta bere hurbilekoentzat, baina garaipena izan da guztiontzat, gobernu eta epaitegiaren temakeriaren aurrean. Kolektiboak ez du lehia gisa planteatu, hil ala biziko larrialdi erantzuna izan da.  Giza eskubide eta bakearen alde dagoenarentzat ere.

**LG.-** Zaila da garaipenaz hitz egitea, baina ahaleginak bere uzta ekarri du, geroari begira hazia ere bada ereindakoa. Pozik gaude eta merezi izan du. Gure elkartasuna eta besarkada beroena helarazten diogu Josuri.

**3.- Gaixo dauden presoen egoera bideratzeko lagungarri izan al zen Uribetxebarriaren kasua?**

**XA.-** Josurekin preso gaixoekiko jokabidea azaleratu da.  Alegia, non jarri dituzten topeak erakusteko balio izan du. Gaixoak kaleratzeko asmoak non dituzten. Ez dugu inongo asmorik gaixotasun larriak dituzten kideekin inolako lehia politikoetan sartzeko. Kalean behar dutela egon diogu lehentasunez, eta kaleratze hori errazteko egin beharrekoa egiteko prest. Bidea itxita dute.

**LG.-** Etsaiaren amorruak eta krudeltasunak ez du mugarik. Ez du urratsik emateko borondaterik, ezta muturreko kasuekin ere, gainontzeko  preso gaixoei etsipena sortu nahian, bide bakarra damuketa dela dio. Zalantzarik ez dago prozesua blokeatzeko duten jokabidea, egoera larrienak ere erabiliz.

**4.- Azken agirian, sabanaketari amaiera ematea EPPKren apustu politikoa dela nabarmendu zenuten. Premia handiko urratsa da. Nola azkartu? Nola bultzatu baina?**

**XA.-** Sakabanaketari amaiera ematea kontu aurre-politikoa da, alegia, eskubideen errespetu hutsetik bideratzekoa. Aski litzateke gobernuek su-eten iraunkor egiaztagarririk aldarrikatzea, bortxaz beteriko zigor politika indargabetuaz. Presoon aurka soilik ez doana. Senide, lagun eta milaka euskal herritarren aurkakoa ere badoa. Gobernuek giltza eskutan dutela jarraituko lukete. Gu espetxean, eskubideak errespetaturik eta Euskal Herrian. Senideen aurkako herioitz-zigor lausoa indargabeturik. Gaixo larriak kalean eta zigorra beterik dutenak bahituta atxiki gabe. Giza Eskubideak eta nazioarteko estandar demokratikoak aintzat hartzea aski.

Hortik aurrera badute gatazkaren konponbideari behin betiko aterabidea bilatzeko bidea jorratzerik. Gure izate politikoaren aitortza, EPPKren aitortza, praktikan garatua inolako hotsandirik gabe, bakearen eta demokraziaren aldeko inbertsio eraginkorra litzateke, zinez, alde guztientzat. Euskal jendartearen hitza eta erabakia errespetatuaz soilik marraz daitekeelako bakean eta askatasunean garatuko den geroa.

**LG.-** Presook, irekitako prozesuan parte hartu nahi eta behar dugu. Kalean kaletik. Horretarako kaleratze prozesu bat eraman beharra dago, ez dugu eta irudikatzen gatazka konponduko denik espainia eta frantziako espetxeak euskal presoz beteta. Hitz eginda eta adostuta izan beharko da. ETA eta Gobernuek ireki beharko dute bidea. Kolektiboa ikuspegi zabalarekin ari da, bide horretan sakontzeko prest.

**5.- Zer egiteko prest zaudete horretarako? Legeak ematen dituen zirrikituak baliatuko dituzue?**

**XA.-** Legea orohar eta bere interpretazio eta aplikazioak, ematen diren urratsei segurtasuna eta babesa emateko baliatu beharko lituzkete, horretan ez genuke arazorik. Ikuspegi hori aldatzen ez den artean zaila izango da aurrera egitea, ez nahi ez dugulako, uzten ez digutelako baizik. Oso garrantzitsua da geuk presook erabakiak hartu eta urrats berriak emateko batera egotea, Euskal Herrian euskal jendartearekin. Prozesuari ekarpena ahalik eta sendoen eta lasterren egitea. Sakabanaketa bera da oztopo, ausartago, 'aldebakarkiago' jokatzeko.

**LG-** Euskal Herrian biltzea, deportazioarekin amaitzea da. Lehentasuna da, baldintza politiko eta aukera zein bitarteko berriak sortuko direlako, bidea denontzat erraztuz. Legeek ez dute dispertsioa babesten…kontrakoa ez bada. Legea hain zuzen baliatzen da eskubideak garatu baino zanpatzeko. Salbuespeneko legeak oztopo bilakatu dituzte aurrera egiteko, aitzakia ez mugitzeko. Legeek une honetan ez dute irtenbide integrala jasotzen. Nolanahi ere, legeek ematen dituzten aukerak baliatzen ditugu, bai. Ari gara.

**6.- «Estatuei dagokie salbuespeneko egoera eta neurri oro indargabetzea» diozue azken agirian. Egin nahi ez badu, non eta nola sartu behar da akuilua?**

**XA.-** Presoak eskuak loturik gauzkate. Ziegako atearen gakoa etsaiaren eskutan dago eta ez Ezker Abertzalearenean. Ezker abertzaleak gatazka konpontzeko norabide berria markatu du eta aukera berria eskaintzen ari da. Gobernuari kostatzen ari zaio errealitate berria asimilatzea. Ez badu urratsik eman nahi presook, euskal gizarteak eta nazioarteko komunitateak behartu egin beharko dugu.

**LG.-** Metatuz doan indarra beharko da, arrazoian finkaturiko egoskortasuna, emari xumez eta ibai oparoz gobernuek trabes jarritako harresia gainditu ahal izango da, pitzatu bestela. Akuilu eta ziri, prozesuaren une eta zeregin orotan da beharrezkoa. Herritarren eskubideen defentsak konponbidea indartzen duen gisara, prozesua azkartzeko beta euskal eta herri aske egiten gaituen zeregin orotan bada.

**7.- Zuen esku ez al dago ezer? Izan ere, «urrats erabakigarriak» egiteko prestasuna azaldu duzue dagoeneko. Zein dira urrats horiek?**

**XA.-** Bai, noski. Ibilbide inportante bat egin dugulakoan gaude azken agirian gogora ekartzen genuenez. Urrats erabakigarriak hartzeko prest gaude, ekimen berriak planteatzeko, egoera desblokeatzen laguntzeko, gure egoeran aldaketa ekar lezaketenak baina batez ere azpimarratzen dugu, ito edo usteldu nahi duten prozesua azkartzeko. Ardura horretatik ari gara. Askapen prozesua perspektiban, helburu politikoak ikusmiran.

Badago halako presa bortxatu bat eremu askotako adierazpen ezberdinen bidez EPPKk ezer egin eta esan dezan, ETArekiko, biktimekiko etabar…Gure posizioa argia da eta etengabe plazaratzen ari gala. Nolanahi ere, EPPKaz edo EPPKren izenean mintzo direnei norberaren eremutik eragitea animatuko genituzke.

**LG.-** Kolektiboa militante politiko arduratsuz osaturik dago, Euskal Herriko Askapen prozesuak aurrera egin dezan erakusten dugun borondate politikoa gardena da. Urratsak gauzatzen goaz une egokiena irizten diogunean, prozesua desblokeatzeko dagokigun erantzukizun osoarekin, preso guztiak kaleratzeko lehentasunarekin eta autodeterminazioa jomugan, hots amnistia ikusmiran(konponbide integrala).

Sakabanaketak iraun bitartean, urrats oro preso batzuren aurkako txantai edo zigor-erantsi bihurtzeko aukera badute, 'aski ez dela' mantrari atxikiz, edota gure artean mailaketa-bereizketa berriak asmatuaz. Hori kontutan hartzeke, eska eta eska aritzeak bortxaz baliatzen denari baino ez dio onik egiten.

**8.- Presoen artean desberdintasunak onartzeko prest zaudete? Egoera ezberdinak ametitzeko?**

**LG.-** Presoen artean ibilbide ezberdina eraman duten kideak daude, hori errealitate bat da eta halaxe onartu eta aldarrikatzen dugu. Berdintzen gaituena da modu batez edo bestez Euskal Herriaren aldeko lanean aritu garela kalean eta horrexegatik espetxeratu gaituztela. Arrazoi politikoengatik espetxeratu eta horregatik preso politikoak garela. Helburu politiko berdinak konpartitzen ditugu eta horren adierazle da Kolektiboaren kohesio politikoa.

**XA.-** Etsaia izan da espetxean berdindu gaituena. Denak ETAkideak garela finkatuz, maniobra juridiko-politiko oinarri gabeko eta sineskaitzean. FIES edo DPS gisa sailkatuz, eguneroko bizitzan dakarren ondorioekin.

Kolektiboaren aniztasuna 2003ko eztabaidan sakondu genuen.

Jatorri eta egoera ezberdinean diren kideak ditugu eta hori gure baitan beti aintzat hartu dugu, zentzugabea litzateke kontrakoa. Besterik da kideak are gehiago zigortzeko edota makil-saria jokua elikatzen jarraitzeko darabilten ezberdintze ahaleginari bazka ematea. Errealitateari atxiki eta bada garaia gobernuek, zenbait alderdik, komunikabidek eta bestek ere, onar dezaten mehatxupeko jardunak bateratasuna oskoldu eta eskua ukabildu baino ez duela egiten. Eskubideen aitortzak, Euskal Herriratzeak, honetan ere eskuzabaltzea lekarke, gure barne koloreak distiratsuago agertzea. Egoera ezberdinen aurrean ezberdin jokatzen dugu.

Galdera, kaleratze mailakatua onartuko genukeen bada, forma nahiz epe ezberdinekin jokatzea ez da gure kezka nagusia baldin eta konponbide plan integral baten baitan gauzatzen bada. Mailakatze hori bakoitzari leporatutakotik baino beste faktoretatik aztertzen dugu: espetxealdiaren luzera, adina, baldintzak…adibidez. Aniztasuna ez datza ETAkide eta ez-ETAkideren artean.

**9.- Azken eztabaidaren ondorioz, EPPKren zuzendaritza berritu eta egitura birmoldatu da. Nola baloratzen duzue aldaketa? Hobeto erantzuten dio gaur egungo Kolektiboaren izaerari?**

**XA.-** Iazko udazkenean abiatu eztabaidak Kolektiboa egoera politikoari egokitu eta erronka politiko berrien aurrean kokatzera eraman zuen. Aieteko Adierazpena eta ETA-k hartutako erabakiarekin, beste aro batean sartu gara. EPPK-k ildo politikoaren egokitzapenari ekin dio, Anoetako proposamena, Gernikako Akordioa eta Aieteko Adierazpena bide orritzat hartuta. Ekainean Adierazpen inportantea burutu genuen. Geroztik, urrats berriak gauzatzeko eztabaida dinamika iraunkorrean murgilduak gabiltza. Eztabaidarekin ekimenak planteatuz.

**LG.-** Antolakuntzan ere urratsak emanez. Mintzaidetza berritu genuen, hiruna estatu bakoitzean. Ondoan beste 14 kide izendatu genituen Kolektiboaren Zuzendaritza osatuz. Espetxe bakoitzean Kolektiboaren ordezkaria bertako arazoak arduradunekin konpontzeko. Urratsok errealitateari erantzuteko baldintza hobeagotan jartzen gaituzte, eztabaidak zuzendu eta erabaki propioak hartzeko. Eztabaida politikoan aktiboki parte hartzeko.

**10.- Nola dira Kolektiboko kideen arteko harremanak eta eztabaidak?**

**XA.-** Militantzia politikoan jatorri eta ibilbide ezberdina dugu, ETAko kideetatik hasi eta Egineko kazetarietaraino. Zenbat buru hainbat aburu, bakoitzak bere ikusmolde eta indarra aportatzen du. Aniztasun zabal hori aintzat hartuz zehazten dugu ildo politikoa eta dinamika. Kolektiboarentzat bakoitzaren aportazioa premiazkoa da modu amankomunean aurrera egiteko. Zailtasunak hor dira, sakabanaketa, debekuak, areagotu diren miaketak etabar… Baina traba guztien gainetik, bizi-bizi gaude. Errazago litzateke guztiok elkarrekin eta Euskal Herrian egongo bagina, noski.

**LG.-** Egoera politiko berriak interes handia piztu du, eta arreta jartzen dugu jasotzen ditugun berri guztietan. Eztabaida eta ekarpen dinamika zabala izaten ari da, esan dezakegu azken urteotako biziena, parte hartze oso haundiarekin, gure arteko kidegotza sendotuz. Espetxeratzen gaituztenetik Kolektiboaren baitan harreman personal eta militante haundia garatzen da. Oso aberatsa da.

**11.- Kalean ere amnistiaren aldeko mugimendua zena aldaketa prozesuan dabil. Nola ikusten da prozesu hau espetxe barrutik?**

**XA.-** Egoera politikoak aldaketak ekarri ditu eta tresna politikoak, antolakundeak, mugimenduak egoera horretara egokitzeko prozesuan dira. Gu geu ere horretan aritu gara.

Amnistiaren aldeko mugimendua euskal preso politikoen egoera eta aldarrikapenen erreferentzia politiko oso inportantea izan da azken hamarkadetan. Kolektiboak zor haundia du urte luzetan eremu honetan lanean aritu diren kide guztiekin. Gatazkaren jatorri politikoa eta Kolektiboaren izaera politikoa ezagutarazi dute. Lan politiko hori egiteagatik espetxeratu zituzten horietako asko, EPPKko kide direnak eta orandik espetxean dirautenak!

**LG.-** Beste erreferentzia batzuk sortu dira, Herrira mugimendua esaterako, bestelako profil eta dinamika garatzen duena. Indar metaketa eta herri aktibaziorako ezinbestekoa. Euskal preso politikoen eskubide eta eskabideak euskal gizartearekin egoki txertatzen ari direlakoan gaude.

**12.- Duela gutxi ETAk bakerako agenda bat aurkeztu zuen eta, bertan, presoen eta errefuxiatuen auzian etxeratzeko «epeak eta formula» topatu behar zirela zioen? Zeintzuk dira, zuen ustez, formula eta epe posibleak? Zein da honetan zuen posizioa?**

**XA.-** ETAk gatazkaren konponbideari begira erantzukizun handia du, eta EPPKk ardura eta zeregin hori aitortzen dio. Eremu honetan bidea irekitzea eta eman beharreko urratsak adostuak, tasatuak izatea funtsezkoa dela uste dugu bai denbora eta bai formetan. Hori saihestea, arduragabekeria litzateke. Gatazka politikoa eta bere ondorioak ez istea suposatuko luke. Halako prozesuek exijitzen duten segurtasun eta egonkortasuna hautsiko litzateke. Beraz epeak eta formulak adostu egin behar dira. Elkarri bermeak eskain diezaioketen mintzaideen arteko adostasuna derrigorrezkoa du behin betiko konponbideak. Gatazkaren ondorioei irtenbiderik eman ezean

prozesu politikoa paralizatzeko arrisku handia dago.

**LG.-** Urrats zehatzak gorpuzteari begira, lehentasunez eta erraztasun osoz, gobernuek badute presookin hitz egiterik. Alde guztientzako onuragarria litzateke ariketa. Orain arteko kuku-saio pattalak baztertuz, gobernuei deia berresten diegu beraz, EPPKren mintzaideekin harremanak abiatzeko.

**13.- Irlandan ere formula eta epe propioak bilatu ziren. Zuentzat eredua al da?**

**XA.-** Irlandan formula eta epeak bilatu ez ezik, adostu egin ziren bi parteen aldetik. Ez da ahaztu behar aurretiazko adostasun politikoa izan zela gatazka konponbidean jartzeko, Ostiral Santuko akordioa izenez ezaguna. Eredu horrek balio izan die bide bat egiteko. Ez zailtasun eta oztoporik gabe.
Gatazka bakoitzak bere soluzio propioak eskatzen ditu.

**LG.-** Mundu mailako beste esperientziak interesgarriak zaizkigu, nola ez, denetik ateratzen dira irakaspenak. Nolanahi ere, hemen gure eredu propioa behar dugu, errealitate espezifikoa dugu, inora begiratzen egon baino horri erantzun behar dio. Formula zehatza baino eredu izateko ahalmena funtsezko gako honetan datza: presoon ahotsa egituratzeko baldintzak sortzea eta kaleratze urratsak konponbidearen elikatzaile bikainak direla, biak ala biak.

**14.- «Jokoan duguna ez da gure egoera hobetzea, jokoan dagoena prozesuaren bideragarritasuna da». Presoen korapiloa askatzeak guztia arinduko luke?**

**XA.-** Arestian esan bezala, sakabanaketaren amaierak lotura zuzena du euskal herritarren borondate demokratikoa aitortu eta aintzat hartzearekin. Prozesua osotasunean da garatzekoa, eta blokeoa eragin nahi duten indarrek, preso-erbesteratu-deportatuen 'gaia' hautatu dute.

Oinarrizko aldarrikapenekin estatuak nola ari diren tematzen, uzkurtzen, zera erakusten du, nolako baldintzetan garatu beharko dugun prozesu demokratikoa bere osotasunean eta beraz konfrontazio demokratikoak sendo-luzea izan beharko duela. Presta gaitezen! Bilbo eta Baionakoak, sakoneko indar metaketa sendoa erakusten du. Gakoa, jarraipena prozesuaren atal-apostu orotan eragitean datza, harria zulatuko duten ur tanta guztien garrantziaz jabetzean, herrietan, arloetan,…

**LG.-** Sakabanaketaren amaiera ez da soilik trabatua den puntuari-uneari eragitea, ez da premia-beharra amaiera. Hori bada, baina bere garrantzia, Euskal Herriaren hitza errespetatze ariketa gauzatzean datza. Presoen aferan aurrera egiteak beste hariak mugitzeko aukera errazu dezake, alde guztien ausardia elika lezake, prozesu azkartzeaz gain, batez ere esango genuke finkatu eta sakondu egingo duela. Horra bere garrantzia.

**15.- Bitartekari taldea harremanetan dago eragileekin, eta haien aldetik harrera ona izan dutela jakinarazi dute. Zer eskatuko diezue eragile horiei?**

**XA.-** EPPKren bitartekariak lanean aritu dira eta pozten gara. Eskatutakoari arduraz erantzun diote. Eragileak zuzenean entzuteko egarri gara, gure iritzi-proposamenak zuzenean entzun ditzaten ere nahiko genuke, bitartekaririk gabe. Harreman zuzenak pentsatzen dugu indar biderkatzailea ekar dezakeela Kolektiboa euskal jendartearekin konektatzeko. Euskal Herrian bilduta, askoz ere errazago gertatuko litzateke.

**LG.-** Eragileak jendartearen sujetuak diren heinean paper garrantzitsua jokatzen dute. Eragileei ez diegu eskatuko gure posizio politikoarekin bat egin dezaten. Bakoitzaren posizioa errespetatzen dugu. Eskatzen dieguna da presoon eskubideak errespetatuak izan daitezen indar eraginkorrean bilakatzea. Presoen eksubideen alde egiteak duen garrantziaz jabetu eta jendartea kontzientziaraztea. Agintari politikoak prozesuan barrena inplika daitezen sustatzea. Mintzaideak prest gaude euskal eragile eta alderdiekin hausnarketak konpartitzeko. Administrazioek trabarik ez jartzean dago koxka.

**16.- Gai honi buruz PSEren baitan aldaketa bat dagoela soma daiteke. Nola baloratzen duzue?**

**XA.-** Sakabanaketarekin amaitu eta preso gaixoak kaleratzeko adostasuna adieraziz urrats batzuk eman dituzte zenbait udaletxetan eta halako mezurik espetxe politika aldatu beharraz ere ailegatu zaigu. Hitz horiek borondate jator baten ispilu izatea da kontua. PSE boteregunetik at dago Hego Euskal Herrian baita Madrilen ere. PSFko hautetsi batzuren hainbat urratsetan ispilurik badutelakoan gaude. Borondate horrek aukera berriak irekiko lituzke, egoera hau ez bailitzateke irauteko moduan izango PSEk PSNrekin batera halaxe nahi izanez gero.

**17.- Zer egin beharko luke Iñigo Urkulluk Lehendakaritzatik presoen auzian? Eta EAJk?**

**XA.-** EAJk erantzukizun handia du, euskal presoen egoerarekiko euskal jendartearen aurrean. Urkulluk aitortu bezala gestio asko egindakoak dira espainiar jauregietan egungo egoerarekin zerikusi haundia dutenak. Alegia, eskubide urraketa iraunkorrarekin. Heriotz ugari sortu dituen politikarekin.

Herri honek eskatzen duena egin behar du Urkulluk, gehiengo oso zabalak aldarrikatu duena. Gasteizko legebiltzarrean bertan berretsitakoa bete eta betearazi: euskal presoak Euskal Herrira! Bere zina Gernikako haritzpean ez lardastu, behintzat. EAJ-k sakabanaketaren abiatze eta garapenean duen erantzukizunaren tamainaz jabetu, oinarri sozialari jaramon eginez.

**LG.-** Irekitako prozesu politikoan buru belarri inplikatu eta konponbide integral osoari begira adostasunak bilatu. Euskal herritar guztiak errespetatuaz eta beraz, Euskal Herria osotasunean eremutzat finkatu. Presooi dagokigunez, epe motzean sakabanaketarekin amaitu dadin eta presoen kaleratzea ahalbidetu dadin eragile ezberdinekin batera erabaki politiko eraginkorrak hartu.

**18.- Eta EH Bilduren inguruan osatu den fronte zabalari, zer eskatzen diozue?**

**XA.-** EH Bildu, adoste eta indar metaketa ariketa baten emaitza oparoa da eta erantzukizun handiaren jabe bada, izaniko arrakasta dela medio. Prozesuaren hauspo-indarra izateko zeregina badu, eta bertan Euskal Herria dimentsioa, markaz haratago, bermatzearena. Euskal Herrian dago gakoa, herri mobilizazioak eta Aieteko Akordioak irekitako baldintza-aukera berriei tiraka prozesua sendotuz joan dadin. Osotasunean. Indar politiko eta sozialen adostasuna eraikitzeari begira erantzunkizun eta ahalmen apartak ditu EH Bilduk. Erakutsitako heldutasunez baliaturik, eskuzabaltasunez eta tinkotasunez saretuko ditu instituzioetako ahaleginak eta kaleko engaiamenduak. Aro berriak gorpuztu behar duen euskal udaberriari begira loratze sasoia bilakatzeko buru belarri ahalegindu beharko du. Baita sakabanaketa amai dadin ere.

**LG.-** Lortu duen ordezkaritza politiko instituzionala aintzat hartuz, prozesua indartu eta egituratzen joateko erabakiak hartu eta ekimenak gauzatzea eskatzen diogu. Baita presoen auzian ere.

**19.- Nola baloratzen duzue nazioarteko komunitatearen parte hartzea euskal prozesu politikoan?**

**XA.-** Iragan prozesuekin alderatuta nazioarteko inplikazioa garrantzitsuagoa da eta poztekoa da. Gehitzen badiogu parte hartzen ari diren pertsonalitate eta elkarteak lehen mailakoak direla, gatazka konpontzeko nazioartean den interesa adierazten du. Zailtasun handiekin egin dute topo, Frantzia eta Espainiaren jarrera negatiboarekin. Nazioartean badauden beste tresnak baliatu beharko dituzte urratsak lortzeko.

**LG.-** Nazioartean baina batez ere Euskal Herrian, Aieteko bidearen oiartzun eta atxikimendu zabalak ondo frogatzen du markatutako bide orriaren bideragarritasuna. Interes haundiz eta espektatibaz begiratzen diogu ibilbideari, Foro Soziala antolatzeari eta hortik ondorioztatuko diren lan ardatzei. Gure ustez, ibilbide hori nazioartetik baina batez ere euskal jendartearen babesarekin egin behar da aurrera. Gu ere hor kokatzen gara, bide hori sakontzeko prest. Helburu horrekin, Foro Sozialak luzatu gonbidapenari baiezkoa eman diogu, EPPK-ren mintzaidetzak zuzenean parte har dezan. Hartara egin diogu eskaera administrazioari.

**20.- Estrasburgoko Auzitegiak martxoaren 20an berrikusiko du Ines Del Rioren auzia eta, ondorioz, doktrinarena. Nola prestatu behar da jendea bi agertoki posibleetarako, alegia, iazko epaiaren zentzua mantentzen bada edo, alderantziz, epaia kontrakoa bada?**

**XA.-** Bi agertokiak kontuan izan behar dira eta erantzunak prestatu. Estrasburgo posizionatu zen eta modu erabatekoan gainera. Orain, erabaki ezkor bat ez luke inork ulertuko. Tribunalak dio presoen oinarrizko eskubideak urratzen ari direla, baina gainera irekitako prozesu politikoaren klabean egindako irakurketa oso negatiboa eta arriskutsua da doktrina babesten bada. Estrasburgoko Tribunalak badaki eta baloratu beharko du.

Espainiak erreakzio hain bortitza izan du errekurtsoa onartua izan zedin goi mailako presio zuzena eginez, ondorioz afera atzeratu eta kideen egoera-eskubide urraketa- luzatuz, beste agertokia ere kontuan izan behar dugula, Gobernu espainolak ere prozesuaren klabean bere irakurketa egiten duelako.

**LG.-** Ez da bataila juridiko soila. Interes politiko sakona dago. Estrasburgok inflexio puntu bat markatu dezake Madrilek daraman espetxe politikan. Gobernuak tentazioa izan lezake kontrako erabakia ez aplikatzeko, aitzakia eta amarruak asmatzeko. Euskal Jendarteak eta arduradun politikoek indar nahikoa erakutsi beharko dute hori ekiditeko. De facto ematen den eskubide urraketa larriari amaiera emateko, kide guztiak berehala kaleratzeko, dagoeneko eragindako kaltea izugarria baita, erreparaezina. Irismen luzeagoko ondorio politikoak izan ditzakeenez, etorkizunari begira asko dago irabazteko.

**21.- Espainiako eta Frantziako gobernuen aldetik aurrerapausorik ez dagoela ikusita, nola daude EPPK-ko kideen animoak? Iazko apirileko elkarrizketan presoak egoera berrian itxaropentsu zeudela esaten zenuten. Horrek berdin jarraitzen al du?**

**XA.-** Bagenekien apostua ez zela erraza. Ez dute urratsik eman nahi, inoiz ez bezalako aukera politikoa mahai gainean duten arren. Urrats positibo nimiñoena ere eman ez eta une berean arrestatze, auzi eta kondenekin jarraitzen dute. Argi erakusten dute konponbidearen kontra daudela eta horretarako presoak erabili nahi gaituzte bahitu politiko gisa Herriari xantaia egiteko.

**LG.-** Urte luzetako borrokak zuhur pentsatu eta jokatzera eraman gaitu eta beraz animoak bere horretan daude. Itxaropena beti izan behar da, baina itxaropenarekin bakarrik ez dugu deus egiten, itxaropenak soilik ez du egoera aldatze. Borrokarako erabakitasunak gidatzen du gure burua. Berrindartua dela esan genezake. Konfiantza dugu gure indarretan eta baita euskal jendarterenean ere.

**22.- Adierazpenei erreparatuz gero, Manuel Valls ministroaren eta Ipar Euskal Herriko hautetsien arteko talka nabarmena da. Nola uler daiteke egoera berri hau?**

**XA.-** Parisetik behin eta berriro diote Frantzia Espainiaren ondoan lerrokatzen dela, Espainiarekiko kolaboratzaile fidel bezala bere burua aurkeztuz baina, Frantziak bere interes propioei egiten die so Ipar Euskal Herriari existentzia politikoa ukatzen diolarik. Frantzia, Euskal Herriko gatazkaren aurrean lehen mailako eragilea da. Euskal gatazkan duen inplikazio zuzenaren adibideak ez dira falta. Duen arazo politikoa eta gatazkaren ondorioen errealitatea ezin ditu saihestu eta arduraz inplikatu beharko du konponbide prozesuan.

**LG.-** Valls ministroak edo berak ordezkatzen duen posizioak Gobernu frantsesarena finkatu duela dirudi, hilabete batzuetako sentsazioei amaiera emanez. Ipar Euskal Herrian Aietez geroztik arazo bat sortu zaie. Adostasun politiko zabala eraiki da ezkerretik eskuinera, oso garrantzitsua baloratzen duguna.

Arestian esan bezala blokeoari erantzuteko gakoa Euskal Herrian dago. Jarduteko molde oso baliotsua gorpuzten ari da Lapurdi, Behenafarroa eta Zuberoan. Bultzada haundia ematen ari zaio prozesuari, engaiamendu zehatzez, elkarlanguneak lehenetsiz. Prozesu osoa aintzat harturik landu eta adostu beharreko akordioa gorpuztuz. Euskal Herriaren aitortza bera, sakabanaketaren amaia, ezberdinen arteko elkarrizketa saio iraunkorra, bakoitza bere moldez eta eremuan, elkarren pizgarri eta euskarri. Baionako Foruma bide horren aintzindari indartsua da. Lurralde ezagutzarekiko posizioa eta Herriaren erantzuna jokoan da.

Dabilen harrian goroldiorik ez. Urratsez marrazten da bidea. Abiatuak gara jokaleku demokratikoa eraikitze bidean. EPPK urratsak ematen ari da eta gehiago emango ditu. Euskal jendartearekin batera Euskal Herria helburu. Euskal Herria bihotzean. Lortzen ari garena, lortuko duguna!

**Xabier Alegria (Lezo. Puerto III)**
**Lorentxa Gimon (Angelu. Rennes)**

**2013ko otsailan**